# Bertzo Berriyak

1

Kargu egiñ biayot
Pello errotari
zergatikan dabillen
gezur kontari
desonrratu nai luke
Juan Jose Udarregui
ez dit mantxa aundirik
billatuko neri
nik asko berari
badauzka ugari
ez da ondo ari
zer mutilla ori
propina partitzeko
ezdaukanari.

2

Pellok itzegiten du
gogor ta torpezan
neri ezer emateko
etzayola ezan
ez aditu ta ere
gustokua izan
konprendituko zuen
artzeko izan bazan
bera dago kausan
ez dago pobrezan
zartu da interesan
bota du grandezan
gezurra nai dubenak
sinistu dezan.

3

Gizon orrek emandu
asko esperientzi
nai dubena esan da egiñ
daduka lizentzi
urretan omen dauka
asko abundantzi
lasai egiñ dezake
mantendu ta jantzi
ematiari utzi
artutziari eutsi
dauka lotza gutxi
ortzak erakutzi
onekiñ biar degu
bost pazientzi.

4

Orren despreziyuak
ez daude astuta
arro dabill orgulloz
aberastu ta
Juan Jose dagualako
burutik nastuta
ori iñoiz bezela
zurrutak postuta
tragua ustu ta
mokua zorroztuta
kopeta belztuta
erdi berdoztuta
lotzak ematen dizkit
berak ez du ta.

5

Tokatu balitz neri
premiyua ematia
Pellok esperatuko
zuben partia
orri gustatzen zayo
aurrian jartia
ez artu ta saltoka
igesi juatia
ez da inozentia
malezis betia
agintzen dezentia
zer ayudantia
orrek kendutzeko du
borondatia.

6

Falso testimoniyua
modu orretan sortzen
kastigatu dezagun
ez da bildurtzen
zuk deretxo gabiak
badakizu artzen
españak igurtzita
patrikadan sartzen
or zabilza urtzen
onrradubak neurtzen
ez badezu aitortzen
aziko naiz txartzen
ez dezu zere onra
asko edertzen.

7

Azpeitiyan izanak
gera elkarrekiñ
pazientziya asko
biar da orrekiñ
beste lagun bat ere
bazuen berekiñ
biziro portatubak
ez dira nerekiñ
bagendu zerekiñ
pakia gurekiñ
zeiñ gabiltzan zikiñ
nai duenak jakiñ
biar dan lekutikan
lanari ekiñ.

8

Orrelako modurik
iñon egundaño
ez degu oserbatu
guk orain daño
neretzat izandu da
franko desengaño
kotxian juan ninzan
Azpeitiaraño
iyo ari goraño
nork daki noraño
itzegiten laño
Pello ta Otaño
asiera obia
despedida baño.

9

Azpeitiyan utziya
zuten urre pilla
ostatura juan ziran
kanbiyo billa
amar ta amabi duro
zan biyen partilla
Juan Jose gabetanik
egiñ zuten tortilla
ni oso umilla
ez neguen abilla
korputza debilla
aprobecha nadilla
itxuben aurrerako
¡Ay! zer kuadrilla.

10

Pello Donostiarra
etzaituzte deitu
nork bere oñaziak
pasa biaitu
emengo publikuak
umillak nai ditu
zu guztion buruba
txokuan gelditu
gu biartu gaitu
sinple iruditu
ez naiz atrebitu
zuri bentak aitu
orgullo geyegiyak
ortara zaitu.

11

Azko egoten gera
dirubak postubak
bertzolari gutxi
aberastubak
korritzen ez degulako
gu gaude mostubak
urtiak juan eta
odolak oztubak
egite dira gaztubak
ez daude aztubak
ordena eztubak
itzketa juztubak
Donostiyan nai dira
gizon prestubak

12

Egiyaz enpliatu
dauzkatzun indarrak
utzi zitalkerizko
esan biarrak
zu zerala mediyo
zortu ziran gerrak
ez dizkidatzu egiñ
aziyo ederrak
ez izan zabarrak
Gipuzkoatarrak
desaide ta farrak
zure sake txarrak
errestatuko ditu
Udarregui zarrak.